*DOKTRINA EZARRITA IRTEERA FINKATU AURRETIK: **10***

**1. JOSU AMANTES ARNAIZ (Bilbo. Bonxe):** 1992an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

**2. IÑAKI ARAKAMA MENDIA (Gasteiz. Sevilla II):** 1997an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**3. SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA (Lasarte. Zuera):** 1987an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**4. JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA (Itziar. Puerto III):** 1989an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**5. OSKAR CADENAS LORENTE (Donostia. Murcia II):** 1996an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**6. JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO (Portugalete. Mansilla):** 1995ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**7. MANU GONZALEZ RODRIGUEZ (Laudio. Sevilla II):** 1989an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**8. UNAI PAROT NAVARRO (Baiona. Puerto III):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**9. LURDES TXURRUKA MADINABEITIA (Soraluze. Huelva):** 1994ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**10. JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI (Hernani. Zuera):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

*KALEAN (DOKTRINA EZARRITA BAINA ZIGORRA BETE GABE): **4***

**1. ANDER MITXELENA (Oiartzun):** 2001tik baldintzapeko askatasunean dago. 2008ko Otsailaren 25ean bukatzen zuten zigorra, baina 197/2006 Doktrina aplikatu zioten 2014 arte.

**2. BAUTISTA BARANDALLA IRIARTE (Iruñea):** 1990ean espetxeratua. Irteera data 2009-06-30rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. Bere gaixotasuna dela eta 2009an kaleratu zuten, kontrol neurriekin etxean. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

**3. INAXIO MENDIBURU ITURRAIN (Oiartzun):** 1984ean espetxeratua. 2014ko ekainera arte luzatu zioten zigorra. 2009Ko maiatzean 197/2006 Doktrina aplikatu zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

**4. ANTTON TROITIÑO ARRANZ (Donostia):** 1987an espetxeratua. Irteera 2011-02-04rako zuen. Baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu zioten.

*KALEAN (DOKTRINAREN ZIGORRA BETEA): **12***

**1. KANDIDO ZUBIKARAI BADIOLA (Ondarroa):** 1989an espetxeratua. 2006ko urriaren 26an askatu behar zuten , baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zioten.

**2. JOSE MARIA SAGARDUI MOJA (Zornotza):** 1980ean espetxeratua. Irteera 2009ko abuztuaren 20rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zioten.

**3. JON AGIRRE AGIRIANO (Aramaio):** 1981an espetxeratua. Irteera 2006ko urriaren 28rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arterte luzatu zioten.

**4. JUAN CARLOS PEREZ OJUEL (Iruñea. Kalean):** 1990an espetxeratua. Irteera data 2008-04-16rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2009ko abuztuaren 19ra arte luzatu zioten.

**5. FERNANDO ETXEGARAI GAZTEARENA (Plentzia):** 1987an espetxeratua. 2008 urtarrilaren 4an kaleratua izan zen,  baina urte bereko apirilean berriro atxilotu zuten zigorra 25 urte arte luzatuz. Urte bereko maiatzean berriz, epaileak 20 urtetan finkatzen du bere aurkako zigorra, eta kalera atera zuten.

**6. ANTXON GARCIA DEL MOLINO:** irteera 2010eko abuztuarako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zitoen.

**7. TXERRA MARTINEZ GARCIA (Basauri-kalean):** 1991an espetxeratua. Irteera 2006ko abuztuaren 24rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zioten.

**8. ESTANIS LOPEZ AGIRIANO (Oiartzun):** 1986an atxilotua. 2011ko maiatzaren 10ean kaleratu zuten.

**9. ANDER ERRANDONEA ARRUTI (Oiartzun):** 1986an atxilotua. 2011ko maiatzaren 10ean kaleratu zuten.

**10. JUAN MARIA IGARATAUNDI PEÑAGARIKANO (Zestoa):** 1987an atxilotua. Irteera data 2009rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017-06-06 arte luzatu zioten, baina Epaitegi Konstituzionalak 2012an, bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.

**11. JOSE IGNACIO GAZTAÑAGA BIDAURRETA (Arrasate):** 1988an espetxeratua. Irteera 2006ko martxoaren 29rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2018ra arte luzatu zioten, baina Epaitegi Konstituzionalak 2012an, bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.

**12. JOSE MARI PEREZ DIAZ (Zarautz):** 1987an espetxeratua. Irteera 2008ko abenduaren 15erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu zioten, baina Epaitegi Konstituzionalak 2012an, bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.



# ZIGORRAREN 2/3 ETA 3/4 BETETA DITUZTEN PRESOAK

Egun 168 euskal preso politikok zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta izateagatik baldintzapeko askatasunari esker kalean beharko lukete, eta hala ere espetxeraturik mantentzen dituzte. Beste behin Euskal Preso Politikoei salbuespeneko neurriak ezartzen zaizkiela ikus daiteke. 168 pertsonek urteak daramatzate espetxean eta zigorraren 2/3 eta 3/4ak beteta baldintzapeko askatasunean beharko lukete, baina espetxean jarraitzen dute. Hona hemen aske beharko luketen presoen zerrenda:

***Estatu espainiarra***

ABAD PALACIOS OSKAR
ABAD SAN PEDRO ENDIKA
AGIRRE LETE JUAN LUIS
ALMARAZ LRRAÑAGA AGUSTIN
ALONSO ALVAREZ RAUL
ALONSO CURIECES ANUNTZI
ALONSO RUBIO IÑAKI
APARICIO BENITO JON KOLDO
APEZTEGIA JAKA JOXE KARLOS
ARANBURU MUGURUZA XABIER
ARISTI ETXAIDE PATXI
ARKAUZ ARANA JOSU
ARREGI ERROSTARBE JOSEBA
ARREGI IMAZ XABIER
ARRIAGA ARRUABARRENA RUFINO
ARRIETA PEREZ DE MENDIOLA ISMAEL
ARROZPIDE SARASOLA SANTIAGO
ARTOLA MENDIBE MARIO
ASENSIO MILLAN PAUL
ASKASIBAR BARRUTIA BIXENTE
ASKASIBAR GARITANO MIKEL
AZKARATE BADIOLA MIREN
BALANZATEGI AGIRRE XABIER
BALERDI IBARGUREN XABIER
BALERDI ITURRALDE JUAN CARLOS
BEASKOA RODRIGEZ JON
BEAUMONT BARBERENA JOSU
BELLON BLANCO ARKAITZ
BELOKI RESA ELENA
BENAITO VILLAGARCIA MIGULE ANGEL
BERISTAIN URBIETA JOSE MARIA
BERISTAIN URIZARBARRENA IKER
BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
BETOLAZA VILAGRASA GORKA
BILBAO BEASKOETXEA IÑAKI
BRAVO MAESTROJUAN JOSU
CABELLO PEREZ ANDONI
CADENAS LORENTE OSKAR
CAÑAS CARTON IÑAKI
CASTRO SARRIEGI ALFONSO
DORRONSORO MALAXETXEBARRIA JOSE MARIA
EGIGUREN ENBEITIA OLATZ
ERNAGA ESNOZ JOSEPA
ERRAZTI ELORZA JOKIN
ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
ESNAL JUANTXU
ESPARZA ORTEGA JOSEBA
ESTONBA ITURRIZA ARATZ
ETXEANDIA MEABE JOSE MIGEL
ETXEBARRIA SIMARRO LEIRE
ETXEBARRIA MARTIN IÑAKI
ETXEGARAI MENDIGUREN MARTIN
FAGOAGA IGANTZI IÑAKI
FERNANDEZ BERNALES JULEN

FERNANDEZ CASTAÑARES ELIAS
GABIOLA GOIOGANA ANDONI
GALARZA QUIRCE LUIS ANGEL
GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
GAÑAN RAMIRO GAIZKA
GARAIZAR SAN MARTIN NEREA
GARCIA MIJANGOS JOSE
GARCIA RAZKIN SERGIO
GARCIA SERTUTXA GORKA
GARTXOTENEA IRURETAGOIENA ARITZ
GAZTELU OTXANDORENA JOSE MIGUEL
GOIENETXE ALONSO IÑAKI
GOLDARAZ ALDAIA XABIER
GOMEZ LARRAÑAGA ARATZ
GONZALEZ PAVON JOSEBA
GONZALEZ RODRIGUEZ MANUEL
GONZALO CASAL IÑAKI
GRAMONT DABID
GUEMES OIARBIDE ITXASO
GUNDIN MAGUREGI PATXI
HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
HIDALGO LERTXUNDI AIMAR
IBARRA IZURIETA BIGARREN
IPARRAGIRRE ARRETXEA IMANOL
IRASTORZA OTEGI AINHOA
JIMENEZ MARTIN MIKEL
JUARISTI ARRIETA XABIN
CORTA CARRION MIKEL
LABIANO ZEZEAGA ARITZ
LARRINAGA MARTIN JULEN
LARRINAGA RODRIGUEZ ASIER
LASA MITXELENA JUAN LORENZO
LEGAZ IRURETA ARMANDO
LESENDE ALDEKOA TXOMIN
LIGUERZANA AJURIAGERRA AITOR
LOIZAGA LOINAZ IÑAKI
LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO JOSE RAMON
MAJARENAS IBARRETA SARA
MARKEZ DEL FRESNO KEPA
MARTINEZ IZAGIRRE JABIER
MARTINEZ PEREZ LEIRE
MUJIKA GARMENDIA FRANCISKO
OIARTZABAL UBIERNA ANARTZ
OLAIZ RODRIGUEZ JORJE
OLANO OLANO JUAN MARIA
OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
ONAINDIA SUSAETA JOSUNE
ORMAZABAL GAZTAÑAGA JON MARKEL
OSTOLAZA IKARAN ENEKO
OTAZUA URRESTI IÑIGO
PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
PEREZ DE ANUNCITA URKIJO EDUARDO PABLO
PLAZAOLA ANDOAGA ALBERTO
PRIETO JURADO SEBASTIAN
RODRIGUEZ CORDERO GONZALO
ROJO GONZALEZ JUAN RAMON
RUBENACH ROIZ GERMAN
RUIZ JASO ZIGOR
SADABA MERINO FRANCISCO JAVIER
SAEZ ARRIETA ARKAITZ
SAENZ OLARRA BALBINO
SAGARDOI LANA XABIER
SALEGI GARCIA OROITZ
SALUTREGI MENTXAKA JABIER
SAN EPIFANIO SAN PEDRO FELIPE
SOLA TORRES JOSE DOMINGO
TAPIA ZULAIKA ASIER
TERRONES ARRETE JAGOBA
TOBALINA RODRIGUEZ JUAN
TODA IGLESIA TERESA
TRENOR DICENTA KARLOS
TXIMENO INZA XABIER
TXURRUKA MADINBEITIA LURDES
UGALDE ZUBIRI ANDONI
UGARTE VILLAR XABIER
URIBE NAVARRO RAMON
URIZAR DE PAZ GERMAN
URIZAR MURGOITIO JOSE GABRIEL
URRA GURIDI KEPA
VARGAS OLASOLO MIKEL
VIRUMBRALES AMENABAR ASIER
ZABALA ERASUN GABRIEL
ZABARTE ARREGI JESUS MARI
ZALAKAIN GARAIKOETXEA JESUS MARIA
ZARRABE ELKOROIBIDE MIKEL
ZELARAIN ERRAZTI JULEN
ZELARAIN OIARTZABAL PEIO
ZENARRUZABEITIA IRUGUENPAGATE ZALOA
ZERAIN ALVARADO JOKIN
ZIGANDA SARRATEA JOSU

ZUBIA URRUTIA IKER
ZUBIAGA LAZKANO XEBER
ZUBIETA ZUBELDIA JUAN JOSE
ZUBIMENDI IZAZA ARAITZ
ZUBIZARRETA BALBOA KEPA
ZUGADI GARCIA IÑAKI
ZULAIKA AMUTXASTEGI GORKA

***Estatu frantziarra***

ALCANTARILLA PEIO
ALMANDOZ MIKEL
BERNADO BONADA MARINA
CORNAGO GALDER
ELIZEGI INIGO
ESNAL JACKES
HARANBURU FREDERIK
HIRIGOIEN PEIO
KIRRU OTXOANTESANA JON
LEGORBURU ITXASO
OLZOMENDI MATTIN
PAROT JON
PERURENA ARGI
REGO IÑAKI
SAINT PEE JEAN MARIE
BEÑAT SANSEBASTIAN
IBAI SUESKUN

4.



# IHESLARIAK

Luxiano Eizagirre Mariscal iheslari politiko sanpedrotarra martxoaren 29an hil zen Kuban, 56 urte zituela, gaixotasun batengatik. 1978an ihes egin zuen Eizagirrek Euskal Herritik, eta Venezuelan urte batzuk eman ondoren, Togora deportatu zuten 1984an. Martxoaren 29an hil zen, Kuban.

Luxiano Eizagirreren heriotza salatzeko Euskal Preso Politikoen Kolektiboko kideak aurkitzen diren hainbat espetxean, ekimen ezberdinak burutu dituzte.

Horrelako egoerak errepika ez daitezen euskal errepresaliatu politikoen eskubideak errespetatzea exijitzen dugu. Izan ere, azken urteetan jasandako jazarpen politikoaren ondorioz eta torturak jasateko beldurraren ondorioz, gure senide eta lagun askok ihes egin behar izan dute euren etxeetatik; ez dakigu non bizi diren ez eta zein bizi baldintzetan bizi diren. Egoera hau bereziki zaila da euren senitartekoak non eta nola dauden ez dakitenentzat.

Zenbait iheslari Euskal Herritik milaka kilometrotara bizi dira: Venezuelan, Panaman, Kuban, Mexicon, Belgikan, Cabo Verden eta beste hainbat herrialdetan. Senide eta lagun hauek muturreko egoeretan bizi dira; gehienak inongo dokumentu legalik gabe, izen eta abizenik gabe, eta nazionalitaterik gabe bizi dira oso kultura ezberdineko herrialdeetan. Gainera, momentu oro atxilotuak, torturatuak eta espetxeratuak izateko beldurrarekin bizi dira.

Iheslariak diren beste zenbait senide eta lagun euren etxeetatik kanpora bizi dira, baina Euskal Herrian daude: Lapurdin, Behe Nafarroan eta Zuberoan. Baina, gertuago egonagatik iheslari hauen egoera ez da askoz hobeagoa. 80. hamarkadan estatu frantsesak iheslari asko deportatu zituen, eta gaur egun euro-agindua baliatzen du gure senide eta lagun iheslarien aurka; ondorioz, edozein unetan atxilotuak, torturatuak eta espetxeratuak izan daitezke.

Iheslarien senide eta lagunek hainbat oztopo gainditu behar izaten dituzte eurekin komunikatu ahal izateko. Izan ere, herrialde horretara egokitzeaz gain, beraiek bisitatu ahal izateko aurre egin behar dien gastu ekonomikoa ere handia da; honi estatuen errepresioa gehitu behar zaio.



# 5. GERTAERA LARRIAK

## ISOLAMENDUA ETA BAKARTZEA

Onartezina den bakartze edo isolamendu egoeran aurkitzen dira orain ere hainbat euskal preso politiko. Jarraian aipatutako presoak bakartuak daude, inongo kiderik gabe:

***Espainiar estatua***

Txus Martin: Zaballako espetxean.
Leire Martinez: Zaballako espetxean.
Egoitz Garmendia: Alcala Meco espetxean.
Inma Pacho: Malagako espetxean.

***Frantziar estatua***

Naia Lacroix: Gradignan espetxean.
Beñat Sansebastian: Bapaume espetxean.
Kristina Goirizelaia: Bapaume espetxean.
Julen Eizagirre: Joux Laville espetxean.
Jean Marie Saint Pée: Mont de Marsan.
Ibai Peña: Muret Seysses espetxean.
Mikel Almaroz: Tarascon
Juan Carlos Estevez: Toulon espetxean.

***Zenbait preso isolamenduan egoteaz gain, oso egoera txarrean eta baldintza kaskarretan daude. Jarraian espetxeetan isolamenduarekin eta bizi baldintzekin lotuta dauden eta benetan salagarriak diren kasuak aipatzen dira:***

**Albocasser**

Harriet Iragi eta Julen Etxaniz isolamendu egoeran dauden Castello II- Albocasser-eko espetxean. Harriet Iragi otsailean lekualdatu zuten Albocasser-eko espetxera eta ordutik isolamendu egoeran dago. Hasiera batean, Aitor Fresnedo presoa eraman zuten Iragirekin isolamendura, izan ere, presoek zuzendaritzarekin adostua dute Albocasser-eko espetxean ez dela egongo preso politikorik bakarrik isolamenduan. Harriet Iragi da Albocasser-eko espetxean behin-betiko isolamenduan dagoen lehen presoa, hau da, zigorretatik haratago behin-betiko isolamenduan mantentzen duten lehen presoa da.

Otsailaren 22an, Harriet Iragirekin aurkitzen zen Aitor Fresnedo presoak funtzionarioen eraso bat jasan zuen. Egun horretan zenbaketa egiterakoan Fresnedo zutik eta argia piztuta ez jartzeagatik hasi zen iskanbila (presoek ikusteko moduan badaude ez dute zutik eta argia piztuta egon beharrik). Hau arrazoi bezala erabiliz sei funtzionarioren erasoa jasan behar izan zuen. Erasoaren unean, Harriet Iragik zer gertatzen zen galdetzeagatik ere zigorrak jaso behar izan zituen.

Egoera ez da aldatu. Aitor Fresnedoren ondoren, Patxi Markes eraman zuten isolamendura. Egun Julen Etxaniz dago Harriet Iragirekin isolamenduan. Funtzionarioek Iragi eta Etxanizekin duten jarrera oso oldarkorra eta bortitza da. Gainera, isolamenduko bizi baldintzak oso gogorrak dira.

Etxerat Elkartetik gure senide eta lagunei behin eta berriz ezartzen zaien isolamendua salatu nahi dugu. Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza gure senide eta lagunei aplikatzen dieten salbuespeneko beste neurrietako bat da. Isolamendua oso egoera zehatzetara zuzendutako neurria den arren, gure senide eta lagunen kasuan behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Izan ere, euskal preso politikoek ez dute zertan espetxe arautegia puskatu beharrik zigor mota hau jasotzeko. Are gehiago, ohikoa bilakatu da gure senide eta lagunak bata besteengandik bakartzea bai espetxe naiz moduluetan. Gainera, bertan bizi baldintza oso gogorrak jasan behar izaten dituzte. Luzaroan bertan mantentzeak ondorio latzak eragiten dituelarik.

Honegatik guztiagatik, isolamenduarekin amaitu eta gure senide eta lagunak beste kideekin elkartzea beharrezkotzat jotzen dugu; Iragi eta Etxanizen egoera bezalakoak berriro errepika ez daitezen.

**Aranjuez**
Oier Andueza presoak urte bete bakarrik igaro ondoren, isolamenduan jarraitzen du, baina, orain Igor Gonzalez eta Dani Pastorrekin jarri dute. Isolamendu moduluko baldintzak ez dira egokiak bertan bizitzeko eta zuzendariari behin baino gehiagotan eskatu diote zerbait egiteko. Duela hilabete modulura eramango zituztela esan arren, egoerak berdin jarraitzen du.

**Muret Seysses**
Martxoaren 29an atxilotu zuten Ibai Peña preso gasteiztarra Baionan, Espainiako Entzutegi Nazionalak bere aurka duen euroagindu bat dela eta. Hau Entzutegi Nazionalak Ibai Peñaren aurka eskatu duen hirugarren euroagindua da; hau dela eta jada bost aldiz atxilotua izan da. Aipatu behar da Ibai Peñak bizimodu normala eta publikoa egiten zuela Baionan.

Gasteiztarra Muret Seysses presondegian espetxeratua izan zen. Bertara heldu zenetik Ibai Peña oso egoera txarrean bizi da, baldintza oso kaskarrekin. Horren erakusle iritsi zenean oherik, aulkirik, maharik eta burukorik ez izatea. Berak koltxoi bat eskatu zuen eta handik 5 ordu ingurura eman zioten; baina mahaia eta aulkia eman ez zizkiotenez otorduak koltxoiaren gainean egin behar izan zituen, ahalik eta bi egunetara mahaia eta aulkia eman zizkioten arte.

Gainera, eguneko 23 ordutan ziegan egoten da isolaturik, eta patiora joan ahal izaten duen ordubete horretan, patiora eman aurretik eta patiotik sartzerakoan biluztu arazi egiten dute (ordubete hori oraindik gehiago murrizten zaiolarik). Horrez gain, ezin izaten du polikiroldegira edo liburutegira joan, ez zaizkio gutunak iritsi eta berak bidalitakoak ere ez dira ailegatu, egunean bitan bakarrik jan ahal izaten du eta gose handia pasatzen ari da... Oraindik bi bisita besterik ez dizkiote onartu, lagun batena eta aitarena, eta ezin

izan du beste senitartekorik ikusi. Hori nahikoa ez eta funtzionarioen jarrera ere oso bortitza da Peñarekiko.

Ibai Peña apirilaren 13an elkartu zen zuzendariarekin eta moduluko arduradunarekin egoera alda zezatela eskatzeko, baina, lau egun beranduago egoerak berdin jarraitzen du.

Onartezina da presoak egoera honetan bizitzea. Oinarrizko eskubideez hitz egiten ari gara, eta eskubide hauek errespetatuak izan behar dute.

## ERASO FISIKOAK

**Basauri**

Aitzol Gogorza, preso oreretarra, martxoaren 30ean iritsi zen Sevillako espetxetik Basauriko espetxera. Aitzol Gogorza gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten 14 presoetako bat da; Obsesibo konpultsio nahasmena du. Basauriko espetxearen aginduz Aitzol Gogorza Patxi Gomezekin dago ziegan, izan ere, bere gaixotasunagatik Babes Protokoloa aktibatua du.

Atzo, 20:45etan Zerbitzu Burua den funtzionario bat joan zitzaien ziegara Gogorza eta Patxiri. Funtzionarioa oso asaldatuta zegoen, eta biak elkarrekin ezin zutela egon esanez joan zen, Patxi Gomez ez baita babesa emateko presoa funtzionarioaren esanetan. Momentu horretan iskanbila izan zuten, zeren funtzionarioa Gogorza iraintzen hasi zen, hiltzailea deituz eta abar.

Era honetako jarrerak erabat onartezinak dira. Zoritxarrez euskal preso politikoek etengabe jasan behar izaten dituzte funtzionarioen probokazioak, erasoak, irainak etab.; baina, jarrera hauek ezin dira onartu, eta euskal preso politikoek dituzten eskubideak errespetatzea beharrezkoa da. Beraz, berehala amaitu behar da funtzionarioen jarrera oldakor hauekin.

**Soto del Real**

Liher Rodrigez preso lekeitiarrak funtzionarioen jipoi bat jaso du. Hau salatzeko Soto del Real espetxean euskal preso politikoak barauldia burutu dute; apirilaren 24an hasi eta 26an amaitu zuten, hau da, hiru egunetako barauldia burutu zuten.

Oraingoz ez dugu gertakari hauen inguruko informazio zehatzik, baina datozen egunetan erasoa nola gertatu zen azaltzeko informazioren inguruko berri emango dugu.

## SUTEA

**Gradignan**

Martxoaren 26ko arratsaldean, sute bat piztu zen Gradignan espetxean, emakumeen aldean. Naia Lacroix senperearra espetxe honetan aurkitzen da otsailaren 23tik. Euskal preso politiko bakarra da emakumeen moduluan, hortaz, bakarrik dago. Otsailaren 14an atxilotu zuten Naia Lacroix, eta otsailaren 17an Fresnesen espetxeratu bazuten ere 23an jada Gradignan espetxera lekualdatu zuten.

Martxoaren 26an sutea piztu zenean presoak ibiltokira eraman zituzten. Mediku bat eta erizainak bertan izan arren, eta zenbait presori larritasun krisiak eta asma krisiak jo arren, ez zen mediku zerbitzuen aldetik artatzerik izan presoek galdegin zuten arte. Presoak ibiltokian atxiki zituzten inongo informaziorik eman gabe, ez zuzendaria, ez eta arduradunik ez zen joan presoak lasaitzera.

Badirudi sutea gaizki zebilen jantzi idorgailu batetik abiatu zela. Zaindari eta presoek jadanik abisua emana zuten, idorgailu hori gaizki zebilela, baina ez zen ezer egin hau konpontzeko. Egoera honek argi eta garbi erakusten du zer baldintzetan diren presoak espetxeetan. Presoek eurek eta senideon sarri salatu izan dugu zein bizi baldintza eskasetan bizi diren. Eta euren oinarrizko eskubideak behin eta berriz urratuak izaten dira.



# BESTELAKO GERTAERAK

***Espainiar estatua***

**Alcala Meco**
Egoitz Garmendiari ziega gogorki miatu diote.

**Algeciras**
Anabel Egues eta Gorka Garcia Algeciraseko espetxean aurkitzen dira. Bikote dira, eta Madrildik agindu bat jaso berri dute senideekin bisitak egitera ateratzen direnean elkar ezingo dutela ez agurtu, ez besarkatu, ez hitz egin... Hori horrela ez bada, egun horretako bisita kenduko zaie biei.

Bestalde, Anabel Egues bisitarik gabe geratu zen apirilaren 7an aste guztian Algeciraseko espetxean senideei ez zietelako telefonorik hartu; astelehenetik ostiralera deitu zuten 9:00etatik 13:00etara, baina alferrik izan zen.

**Dueñas**
Lander Mauri hamabost egunez egon da bertigoekin, sukarrarekin eta migrainarekin, eta hala ere, ez dute espetxetik atera medikutara joateko. Gainera, migrainarentzat jarri dioten medikazioak onddoak atera dizkio ahoan.

**Gradignan**
Elorri eta Inge Arin ahizpak eta Aintza Zufiaurre atxilotuak izan ziren Gradignaneko espetxean kanpoaldean zeudela preso batekin hitz egiteagatik.

**Granada**
Bisitetara binaka atera zitezkeen lehen, orain launaka atera daitezke.

**Malaga**
Joxepa Ernaga ama ikustera eraman zuten apirilaren 17an. Aurreko egunean iritsi zen Logroñora Soto del Realetik. Hurrengo egunean eraman zuten ama ikustera, eta ordu eta erdiz egon zen berarekin. Dena oso azkar gertatu zenez, bere senideek ez zuten jakin bertan izan zela bisita pasa arte, eta ezin izan zuten berarekin egon.

**Murcia II**
Pello Olano lizartzarra Jaengo espetxetik Murcia II-kora lekualdatzeko hamabost egun igaro zituzten.

**Navalcarnero**
Iker Moreno eta Asier Rodrigez astebetez zigorturik egon dira arratsaldetan patiora irten gabe.

**Sevilla II**
Bertan dauden presoak patiora txanda berean ateratzeko eskaera egin, eta zuzendariarekin hitz egin ondoren baiezkoa eman zieten arren, egoera berean jarraitzen dute. Apirilaren 9an protestaldi bat burutu zuten, ziegan itxialdia burutuz, hau salatzeko. Azken asteetan hainbat itxialdi burutu dituzte honez gain; honela, egoera ezberdinak salatu nahi izan dituzte: kide batzuk bi hilabetez ur berorik gabe egotea, funtzionarioen jarrera erasokorra...

Iñaki Arakama, Roberto Lebrero eta Aitzol Gogorzari miaketa basatiak egin zizkieten ziegetan. Miaketak presoak bertan ez zeudela egin zituzten, eta dena hankaz gora utzi zieten. Bereziki gogorra izan zen Roberto Lebrerori egindako miaketa. Lebrerok miaketan egotea eskatu zuen eta ezezkoa jaso zuen; gainera, hormaren kontra jarri zuten, eta ziegako gauzak lurrera bota eta zapaldu egin zizkioten. Bera zigortu egin zuten, 72. artikulua aplikatuta.

**Topas**
Istilu batzuk izan ondoren, presoei erratza eta fregona ziegan izatea debekatu diete.

**Valdemoro**
Ibon Fernandez presoak zimitza intsektuak ditu ziegan.

**Villena**
Martxoaren 26an Juan Mari Olanori miaketa gogor bat egin zioten.

***Frantziar estatua***

**Fresnes**
Fresneseko espetxean aurkitzen diren euskal preso politikoek astero gutunak bidaltzen dizkiote Laurence Le Vert epaileari eta Garde des Sceauxerari Gradignango espetxean aurkitzen den Naia Lacroixen bakardade egoera salatzeko.

**Muret Seysses**
Itziar Morenok astebete pasa du mitardean zigortuta miaketa integrala egin ziotenean kuleroa emateari uko egin ziolako. Miaketa hauek ziegatik ateratzen edo sartzen diren bakoitzean egiten dizkiete.

**Poitiers Vivonne**
Saioa Sanchez eta Gorka Azpitarte martxoaren 5ean hasita itxialdia burutzen ari dira. Izan ere, beste presoek bisitak astero jasotzen dituzten bezala, beraiek hilean behin bakarrik jaso ditzakete. Elkartasunez, Maite Aranalde eta Eneko Zarrabeitia presoek elkarretaratzea burutzen dute astero, eta astero zuzendariari eta epaileari gutunak bidaltzen dizkiote.

**Villefranche sur Saône**
Ruben Riberoren ziega gogorki miatua izan da.

Ruben Ribero Balmasedako presoaren senideek apirilaren 3an zuten bisita galdu zuten hegazkin konpainien erruz. Izan ere, lehenik eta behin konpainiak greba baten ondorioz Bilbo-Madril hegaldia bertan behera geratu zela esan zieten; aireportuan zeudenez, alokairuko auto bat hartu eta Madrilera joan ziren Lyonera zihoan hegaldia hartu ahal izateko. Madrilera iritsi zirenean, ordea, hegaldi hau ere bertan behera gelditu zela esan zieten, eta azkenean gastu handiak eginda, baina, bisitarik gabe geratu ziren.



# 7. ASKATASUNAK, ESPETXERATZEAK ETA LEKUALDATZEAK

## ASKATASUNAK

**Kepa Suarez (Bilbo)**, apirilaren 2an. 5 urte espetxean igaro ostean, zigorra beteta.
**Ernesto Prat (Berriozar)**, apirilaren 12an. 25.000 euroko bermea ordainduta.
**Txomin Sola (Iruñea)**, apirilaren 20an. 18 urte espetxean igaro ondoren, zigorra beteta.
**Iker Beristain (Getxo)**, apirilaren 20an. Zortzi urte espetxean igaro ostean.
**Aritz Labiano (Zarutz)**, apirilaren 25ean. Urtebete espetxean igaro ostean.
**Haritz Gartxotenea (Zarautz)**, apirilaren 25ean. Urtebete espetxean igaro ostean.

## LEKUALDATZEAK

### DESTINU ALDAKETAK

***Espainiar estatua***

**Aitziber Plazaola Oregi (Bergara):** Alcala-tik Estremera-ra.
**Aniaiz Ariznabarreta (Eibar):** Alcala-tik Estremera-ra.
**Ekaitz Samaniego (Gasteiz):** Zaballa-tik Topas-era.
**Peio Olano (Lizartza):** Jaen-etik Murcia II-ra.

***Frantziar estatua***

**Aitor Lorente (Bilbo):** Fleury-tik Soto del Real-era (estradizioa).

### DILIJENTZIAK

***Espainiar estatua***

**Joxepa Ernaga (Mezkiriz):** Malaga-tik Soto del Real-era.
**Xabier Garcia Gaztelu (Galdakao):** Navacalrnero-tik Almeria-ra.
**Irantzu Gallastegi (Berango):** Soto del Real-etik Almeria-ra.
**Iñaki Arakama (Gasteiz):** Sevilla II-tik Valdemoro-ra.
**Ismael Arrieta (Gasteiz):** El Dueso-tik Navalcarnero-ra.
**Lurdes Txuruka (Soraluze):** Huelva-tik Soto del Real-era.
**Patxi Markes (Berango):** Albocasser-etik Valdemoro-ra.
**Gotzon Alcalde (Getxo):** Murcia I-etik Valdemoro-ra.
**Joxepa Ernaga (Mezkiriz):** Soto del Real-etik Logroño-ra.

